# BAINA... ZER DA EUSKAL CURRICULUMAREN KONTU HORI ?

## 1. ATARIKOA

**Baina... zer da euskal curriculumaren kontu hori ?** Batek baino gehiagok, ditxosozko hitz parea entzuterakoan, bere buruari edo albokoari egindako galdera da hau. Eta, azken aldi honetan euskal curriculuma aipatzen den maiztasuna ikusirik, hezkuntza arloan gehien errepikatzen den galdera izango da ziurrenik. Izan ere, euskal curriculuma hezkuntzako gai-ordenean azaltzen ari baita, gero eta indar gehiagoz, eta ez da kasualitatez.

*Euskara, plazara, euskara! Euskaldun irakasle eta ikasleok plazara, dantzara, plazara! Geure Herriaren geroa baikara!* Telesforo Monzonek idatziriko eta Pantxoa eta Peiok kantaturiko “Ikastoletako ereserkia” izeneko abestian islatzen den legez, hizkuntza izan da irakaskuntza arloko ekimenen abiapuntu eta xede. Hain izan da nabaria hizkuntzaren hegemonia hau, ezen gaur egun ere hezkuntza eta euskara parekatzen baitira maiz. Era honetan, ikastolek antolatzen dituzten jaiak, “euskararen aldeko jaiak” dira; hezkuntza arloko erakundeak, “euskalgintzaren” etiketaren barruan kokatzen dira;...

Hizkuntzaren aferaren nagusitasun historiko hau erabat justifikatua dago. Izan ere, alde batetik, Euskal Herria berreuskalduntze prozesuan murgildurik dagoen herria da, eta prozesu horren gakoetako bat hezkuntzan datza. Beste alde batetik, hezkuntza sistema propioa izateko lehenengo urratsa ere bada: hezkuntza sistema propioa, hizkuntza propioan garatuko da, edo nekez har daiteke “propio”tzat.

Zorionez, asko dira hizkuntza arloan eman ditugun urratsak. Euskal Herriko eskualde gehienetan euskaraz ikasteko aukera dago derrigorrezko hezkuntzan, ehunka dira euskaraz osoki funtzionatzen duten ikastetxeak. Oraindik orain asko dago egiteke arlo honetan, jakina. Euskalduntzen ez duten ereduen desagerpena, lanbide heziketen euskalduntzea edota unibertsitatearen euskalduntzea, horra eskuratzeke ditugun helburuak. Baina, halere, hizkuntzaren normalkuntzan asko aurreratu dugula baiezta dezakegu.

Orain, **hizkuntzaren normalkuntzatik hezkuntzaren normalkuntzara igaro behar dugu.** Hau da, eskolak euskaraz ematea eta hezkuntza euskalduna jasotzea ez dira sinonimoak. Ez da nahikoa belaunaldi berriek euskaraz ikastearekin, ezta gutxiago ere; euskaldun bezala hezi daitezen lortu behar dugu. Hauxe da hezkuntza sistema propioaren bidean igo behar dugun eskaileraren hurrengo maila. Eta horregatik dago pil-pilean curriculumaren gaia azken aldi honetan. Aurrerapausu berriak emateko gakoa delako.

Berriro diogu, **eskolak euskaraz ematea eta hezkuntza euskalduna jasotzea ez dira sinonimoak.** Edo akaso ezin al daiteke Espainiako Historia edo Frantziako Errepublikaren printzipioak euskaraz ere irakatsi? Posible da; areago, horixe egiten ari gara gaur egun, neurri batean edo bestean, euskal ikastetxeetan. *Halakorik! Gure ikastetxean hezkuntza euskalduna jasotzen da!* pentsatuko du batek baino gehiagok. Ez gara gu izango hori ukatzen dutenak. Baina, edozein kasutan ere, guztiok hausnarketa kolektibo bat egin beharko genukeela uste dugu. Zer nolako ikuspegiaz lantzen dira edukiak gure ikastetxean? Edo, beste modu batera esanda, **ZER NOLAKO CURRICULUMA IRAKASTEN DA GURE IKASTETXEAN?** Ikus dezagun, bada.

## 2. HAUSNARKETA BATERAKO HIRU ADIBIDE

Zer nolako curriculuma irakasten da gure ikastetxeetan? Lan xume honen asmoa ez da, inondik ere, horren gaineko azterketa osatua egitea. Hiru adibide jarriko dugu, besterik ez.

### Euskal Herriko historia ezagutzen al dugu?

3 urtetik ikastola batean edo eskola publiko euskaldun batean ikasi duen Donostiako, Iruñeko edo Bilboko gazte bati, honako galdera hauek egingo bagenizkio...

- *Noiz galdu zuen Euskal Herriak bere subirautza definitiboki?*
- *Noiz galdu zituen foruak edo bere garaiko subirautzaren hondarrak?*
- *Zein erregimen faxista egon zen indarrean euskal lurraldean?*
- *Ze ataletan banatuko zenuke XX. mendea Euskal Herriko historia lantzeko orduan?*

... agian honako erantzun hauek emango lituzke, hurrenez hurren:

- *1521ean (Noaingo porrota)*
- *1841ean (Ley Paccionada delakoa)*
- *Frankismoa (eta, agian, Primo de Riveraren diktadura).*
- *1900etik 1936ra arte, 1936tik 1978ra arte eta 1978tik gaur egunera arte.*

Eta neurri batean zuzen ibiliko da; baina, beste batean, ez. Izan ere, erantzun osatuagoak liratezke honako hauek:

- **1620an** (urte honetan bereganatu baitzuen Frantziako Koroak Nafarroako erresumaren azken zatia).
- **1789an** eta 1841ean (Lapurdin, Behe Nafarroan eta Zuberoan frantses iraultzarekin galdu ziren azken burujabetza hondarrak; Araban, Bizkaian, Gipuzkoan eta Nafarroa Garaian, karlistaden ostean).
- Frankismoa eta **Nazismoa** (Lapurdi nazien esku egon zen 2. Mundu Gerran).
- Aurrekoa bezain zilegia litzateke honako bereizketa hau: **1900tik 1914/18ra** (Lehenengo Mundu Gerra), **1914/18tik 1939/45ra** (Bigarren Mundu Gerra) **eta 1939/45tik gaur egunera arte.** Baionako ikasle batek horixe erantzungo luke. Lehenengo bereizketa, azken batean, Espainiako Historiaren arabera eginda dago, eta bigarrena Frantziakoaren arabera. Zein izan beharko luke Euskal Herrikoa?

Adibide hauekin zera esan nahi dugu: Euskal Herriko historia eta oro har ezagutzak lantzen saiatzen garenean ere, zaila egiten zaigu **nazio ikuspegi osatua** lortzea.

### Eskandinabia, India baino handiagoa?

Eskolan (eta orokorrean, gizartean) gehien erabiltzen den munduko mapa Mercatorrek diseinaturikoa da. Mapa hortan Suedia, Finlandia eta Norvegiak hartzen duten espazioa, esaterako, Indiak hartzen duena baino handiagoa da. Ordea, errealitatea oso bestelakoa da:

- Hiru herrialde eskandinabiarrek batera **1.110.000** kilometro karratu dute.
- Indiaren azalera, berriz, **3.268.000** kilometro karratukoa da, hau da, ia-ia **hirukoitza**.

Ikus daitekenez, geografia ere ez da neutrala. Herrialde bat handiagoa edo txikiagoa da, munduaren jerarkian ematen zaion garrantziaren arabera.

### Hezkidetza? Zer zen hori?

Garai batean asko hitz egiten zen hezkidetzaz, hau da, gizon eta emakumeen arteko berdintasunean oinarritzen den (eta berdintasun hori lortzeko hezkuntza baldintzak sortu nahi duen) planteamendu pedagogikoaz. Gaur egun ez da apenas aipatu ere egiten, ordea. Helburua lortua ote? Ez, ezta gutxiago ere, Emakundek[1] eginiko azterketari erreparatzen badiogu, behintzat. Institutu horrek lehen hezkuntzako hainbat testulibururen irudiak aztertu zituen, eta honako bi ondorio hauek atera zituen:

-Lehenik eta behin, **pertsonaia maskulinoak gehiagotan azaltzen dira (306 aldiz), pertsonaia femeninoak baino (soilik 135 aldiz).**

-Bigarrenik, **pertsonaia maskulinoak maiztasun handiagoz agertzen dira espazio irekietan, pertsonaia femeninoak baino.**

**PERTSONAIA MASKULINOAK**

Pertsonaia maskulinoa agertzen diren 306 giro edo espaziotik, 272 (%89) irekiak dira (soro, hondartza, errepide...) edo gizarte-esparrukoak (bulego, tren, kale...) eta 34 (%11) famili ingurutik hurrekoak (etxea, denda...).




**PERTSONAIA FEMENINOAK**

Pertsonaia femeninoak agertzen diren 135 espaziotik (gizonezkoen espazioaren erdia baino gutxiago, hortaz), 93 (%69) irekia dira eta 42 (%31) famili inguruarekin zerikusia dutenak.




## 3. HITZ EGIN DEZAGUN CURRICULUMARI BURUZ

Aurreko adibideetan ikusi bezala, asko dugu hitz egiteko curriculumaren inguruan. Hitz egin dezagun, bada, curriculumari buruz, eta baita hitz honen eskutik doazen beste hitz potolo horiei buruz: hezkuntza eta kultura.

### Hezkuntza: kultur transmisiorako tresna

[1] Araba, Bizkaia eta Gipuzkoan aritzen den eta izaera instituzionala duen gizon-emakumeen arteko berdintasunerako Institutua.

*Ezinezkoa da kultur edukirik gabeko irakaskuntza, ezta irakaskuntza/hezkuntza prozesua ere. Hain zuzen, curriculuma kultur eduki horiek interpretatzeko era bat da. Aurkez daitekeen edozein hezkuntza eredutan edota proposamenean argi adierazi behar da egiten dugun curriculumaren aukera, zeren hezkuntza eredu guztietan kultur ikuspegi jakin bat hautatzen baita. Eta gainera, ikuspegi hori, gero eta gehiago azpimarratzea komeni da, izan ere gaur egun pedagogiaren alorrean sikologismoak duen eraginez, eduki kulturalik gabeko "hutsaren pedagogia"ren antzeko zerbait nagusitzen ari baita, eta guztia pentsamendu aurrerazale eta zientifikoaren izenean gainera.*

J. Gimeno Sacristanen aipu honek gaian sartzeko baliagarria izango zaigu. Berak dioen bezala, ez dago hezkuntza neutrorik[2]. Izan ere, zer da, funtsean, hezkuntza? **Hezkuntza kultur transmisiorako tresna da, hots, herri baten ondare kulturala belaunaldi batetik bestera transmititzeko tresna.**

Ederki. Zerbait aurreratu dugu. Baina, berehala dator galdera berria: eta, zer da kultura?

## Kultura: giza obra

Kultura gizakiok gainontzeko animaliengandik bereizten gaituena da. Beste animaliek askoz garatuagoa dute berezko sena edo aparato instintiboa. Hau da, egoera ezberdinen aurrean senaz edo instintoz erantzuten dute, neurri handi batean. Gizakiok aparatu institibo horren gabezia kulturarekin ordezkatu dugu. **Egoera bakoitzaren aurrean erantzuten ikasi dugu.** Eta ezagutza hori pilatu egin dugu belaunaldiz belaunaldi, aldi berean garai berriek planteatutako galderentzat erantzun berriak bilatuz. **Giza kolektibitate bakoitzak, hortaz, bere kultur ondare propioa dauka**, belaunaldiz belaunaldi sortutako ondare kolektiboa. Ildo honetan, hona hemen Barandiaranek kulturari buruz esandakoa:

*Herri baten kultura, giza obra bat bezala agertzen zaigu, bere egitura zeinu desberdinetako hainbat piezaz eratua egongo balitz bezala alegia. Gure kasu honetan, eguneroko bizitzak planteaturiko oinarrizko arazoei Euskal Herriak ematen dizkien soluzioen multzoa litzateke.*

Zeintzuk dira, bada, eguneroko bizitzak planteaturiko oinarrizko arazo horiek? Barandiaranek honako zazpi multzo hauetan antolatzen ditu:

1. *Nola lortuko ditut janari-edariak eta osasuna?*
2. *Nola babestuko naiz?*
3. *Nola lortuko dut mundua ezagutzea eta bere materialak eta indarrak neurezerbitzuan jartzea?*
4. *Nola lortuko dut neure antzekoen laguntza eta nola antolatu gizarte-bizitza?*
5. *Nola komunikatuko naiz neure antzekoekin?*
6. *Nola egingo ditut atsegin eta gustokoak zaizkidan gauzak?*
7. *Nor naiz ni, zer da gizakia, zein da bere xedea?*

## Norbanakoa, giza-taldeak eta kultura

Aurrekoak ez du esan nahi, noski, euskaldun guztiok janari-edariak lortzeko bide berdinak edota gizarte-bizitza antolatzeko irizpide beretsuak ditugunik, ezta gutxiago ere. Esaera zaharrak dioen bezala, *zenbat buru, hainbat aburu*[3]. Norberak badu, aurretik aipatutako galderei dagokionez, bere ikuspegi propioa. Bestalde, gizartearen baitan, ikuspegi jakin bat duten giza-taldeak ere badira: ideologia jakin bat duten pertsonak (esaterako, sozialistak); estetika bat konpartitzen dutenak (esaterako, punk-a); afizio bera daukatenak (esaterako, mendizaleak)... Baina, edozein kasutan ere, **badira guztiok amankomunean ditugun elementu kulturalak, euskaldunok munduko gainontzeko herriekiko ezberdin egiten gaituztenak.**

---

[2] Askotan entzun behar izaten ditugu honelakoak: "politika ikastetxetik kanpo utzi behar da"; edota "zuek ideologia abertzalearen arabera hezitu nahi dituzue haurrak". Espainiar eta frantziar hezkuntza ministeritzetatik bultzatzen den hezkuntza eredua neutroa izango balitz bezala!

[3] Zenbat lagun, hainbat iritzi.

## Kultur transmisioa eta berrikuntza

Orain arte esandakoari **zentzu dinamikoa** eman behar zaio. Izan ere, oinarrizko arazo horiei garai batean eta beste batean eman zaizkion erantzunak ez baitira berdinak izan. Oinarrizko arazo horiek aldatzen dira denborarekin (zaharrak desagertu eta berriak azaltzen dira), eta oinarrizko arazo berdinari ematen zaion erantzuna ere aldatu egin daiteke. Azken batean, kultura etengabeko aldaketa prozesuan dagoen elementua baita. Eta aldaketa prozesu honetan ere, handia da hezkuntzaren garrantzia. Hezkuntzak ez du balio soilik ondare kulturala *fotokopiatzeko*. Ondare kultural hori kritikoki aztertu, berritu eta aberastu beharko luke hezkuntza planteamendu eraldatzaile batek.

## Gizarte desberdintasuna eta kultura

Ondare kulturala kritikoki aztertu, berritu eta aberasteko beharra nabarmenagoa egiten da, ondare kultural hori sortzerakoan egondako desberdintasunak kontutan hartzen baditugu. Izan ere, kultura giza obra da, bai; baina, **pertsona guztiek ez dute aukera berdinak izan giza obra horretan parte hartzeko**. Gizon aberatsak zer esan handiagoa izan du emakume pobreak baino. Eta, beraz, ondare kulturalaren azterketa kritikoa bi ikuspegi horiek kontutan hartuz egin beharko dugu: alde batetik, genero ikuspegia; eta beste alde batetik, ikuspegi aurrerakoia.

## Kultur elkarrekintza positiboa eta negatiboa

Orain arte esan bezala, kolektibitate bakoitzak bere kultur ondare propioa sortu eta berritu egiten du denboran zehar. Baina, hori ez du modu isolatuan egiten, gainontzeko kolektibitateekiko elkarrekintzan baizik. Elkarrekintza hori bi modutan eman daiteke.

Batetik, **modu positiboan, armonikoan, aberasgarrian.** Aurretik aipatutako galderei beste kolektibitateek emandako erantzunak *inportatu* egin daitezke (eta baita gureak *esportatu* ere, zergatik ez), erantzun horietatik baliagarria zaiguna maileguan hartuz. Hizkuntzarena adibide ona da, zentzu honetan. Euskarak beste hizkuntzen maileguak hartu ditu (hitzak, espresioak, e.a.), bere oinarrizko egitura mantenduz eta mailegu horiek bertakotuz, nolabait esateko. Kulturaren kasuan ere, kultur erlkarrekintza aberasgarria da, baldin eta gure kulturaren oinarrizko egitura mantenduz, beste kulturen mailegu interesgarriak txertatzeko gai baldin bagara.

Bestetik, kulturen arteko elkarrekintza **modu negatiboan, traumatikoan, pobrean** ere eman daiteke (eta, zoritxarrez, ematen da askotan). Berriro ere hizkuntzaren adibidea hartuko dugu aintzat. Noiz pobretzen edo kaltetzen da euskara? Batetik, euskal hitz, adierazpide eta egiturak, erdal hitz, adierazpide eta egituren mesedetan galtzen direnean. Bestetik, erdara euskarari gailendu eta egoera diglosikoa sortzen denean. Bada, kulturaren kasuan berdin gertatzen da. Erdal kultura gailenduz gero, herria akulturalizatu egiten da, bere nortasuna galtzen du. Zentzu honetan, akulturalizazio prozesuak izugarri azkartu dira globalizazioaren eraginez, eta gurea bezalako herri txikiak bereari eusteko gorriak eta bi ikusten ari dira[4].

## Euskal kultura: Mundua Euskal Herritik ikusi

Euskaldunok geure nortasunari eusten tematu gara. Europako herri zaharrenetarikoa izanik, XXI. menderaino iritsi gara herri bat osatuz. Eta **herri bat osatu nahi dugu ere etorkizunean.** Alabaina, asko dira pairatu ditugun oztopo eta erasoak, eta asko dira egun ere pairatzen ditugunak.

---

[4] Mestizaiaren onurak aldarrikatzen duen kultur ikuspegiak ez du kontutan hartzen kultur elkarrekintzaren alderdi negatibo hau. Ikuspegi *sinplista* horren arabera, nahasketa beti da ona, aberasgarria.

Testuinguru honetan, gure ondare kulturala babesteko eta garatzeko behar gorria dugu. Baina honek ez du esan nahi euskal kultura kanpoko eraginetatik libre mantentzen saiatu behar garenik, edota *berezkoa* eta *gurea ez dena* ezberdintzen saiatu behar dugunik. Ez du zentzurik, esaterako, rocka euskal kulturaren parte den edo ez eztabaidatzea. Rockari buruz euskaldunok egiten dugun interpretazio propioa, hori da euskal kultura. Zentzu horretan, esan genezake euskal kultura *euskal gauzen multzoa* baino, **euskaldunok gauzak begiratzeko dugun *modua* dela.** Eta ez soilik Euskal Herriko *gauzak*, baita mundukoak ere[5]. Esaterako, Txetxeniako gatazka ez dute berdin ikusiko frantziar batek eta euskaldun batek.

## Euskal kultura hezkuntzaren bidez transmitizeko: euskal curriculuma

Argitu dugu, beraz, zer den kultura eta zer den euskal kultura. Bada, euskal curriculuma euskal kultura belaunaldiz belaunaldi transmititzeko (eta eraberritzeko) planteamendu pedagogiko egituratua da. Eta planteamendu pedagogiko egituratu hori honako galdera honetatik abiatzen da:

**Zeintzuk dira, derrigorrezko hezkuntza bukatzean, Euskal Herriko ikastetxe batean ikasten ari den 16 urteko gazteak, gutxienez ezagutu behar dituen gertaera eta kontzeptuak, lortu behar dituen trebetasunak eta egiten jakin behar dituen prozedurak, eta bereganatu behar dituen balioak eta jarrerak?**

Izan ere, ez da nahikoa ikasi behar denaren zerrenda egitea, hau da, ezagutu beharreko gertaera eta kontzeptuak zehaztea. Hezkuntza ez datza soilik horretan. Beste bi arlo hartu behar ditugu kontutan:

- Trebetasunak eta prozedurak. Hezkuntzak pertsonaren gaitasunen garapena izan behar du helburu; esaterako, publikoan hitz egiteko, eztabaidatzeko, testu bat irakurri eta ondorioak ateratzeko edota sormena izateko gaitasuna.
- Balioak eta jarrerak. Sozialki aktiboa eta kritikoa izango den pertsona hezitzea izan behar da ere eskolaren funtzioa, eta horretarako balioak eta jarrerak landu beharra dago.

# 4. ERAIKI DEZAGUN EUSKAL CURRICULUMA

Gure helburua, beraz, Euskal Herriko Curriculuma definitzea eta ikastetxeetan aplikatzea da. Espainiak eta Frantziak, nork bere curriculuma duen bezala, Euskal Herriak ere berea eraiki behar du. **Euskal Curriculuma, zentzu honetan, Euskal Herri osorako baliagarria izango den oinarrizko erreferentzia pedagogikoa izango litzateke[6].** Gero, ikastetxe bakoitzak erreferentzia pedagogiko hori baliatuko luke bere Hezkuntza Egitasmoa egiteko, tokiko errealitatera egokitua egongo dena.

Honek ez du esan nahi hutsetik abiatu behar dugunik, ezta gutxiago ere. **Ugariak dira Euskal Herrian curriculumaren arloan egin diren ikerketak, ekarpenak eta esperientziak**, eta horiek guztiak hartu behar dira kontutan. Baina, edozein kasutan ere, oraindik orain ez dago guztiontzako baliagarria izango den oinarrizko erreferentzia pedagogiko amankomun hori.

## Euskal Curriculumaren diseinua eta aplikazioa

[5] Liburutegietan maiz aurkitzen dugu “euskal gaiak” izeneko saila. Bada, ez dago euskal gairik, gaiak ikusteko euskal modua baizik (hau da, euskaldunok gauza guztiak ikusteko dugun modua).

[6] Pasarte honetan curriculuma aipatzean, hezkuntza planteamendu oso bat bilduko duen txosten pedagogiko mardulaz ari gara.

Aipatutako ideiarekin bat egingo dugu gehienok. Handik aurrera, ordea, zalantzak hasiko dira. Izan ere, espainiar eta frantziar curriculumak derrigorrezkoak baitira gurean, eta gainera euskal ikasleek baxoa eta errebalida gainditu egin behar dute derrigorrez, unibertsitatera joan nahi badute behintzat. Gure ustez, bi eztabaida maila bereiztu behar dugu:

- Lehenik eta behin, **euskaldunok nahi dugun curriculuma** definitu behar dugu, testuinguru legala ezertarako kontutan hartu gabe.
- Bigarrenik, **euskal curriculuma nola aplikatu dezakegun aztertu behar dugu**, dauden oztopoak eta mugak kontutan hartuz.

Bi mailak nahastu eta euskal curriculumaren definizioan egun dagoen testuinguru legala kontutan hartuz gero, okertuko ginateke. Izan ere, ipar-orratz finkoa behar dugu, horretarantz urratsak emateko. Ipar-orratz hori Euskal Herriko Curriculuma da. Eta ikastetxe bakoitzak, dituen aukera eta mugen arabera, urrats gehiago edo gutxiago emango ditu norabide horretan. Baina norabideak euskaldunok nahi dugun curriculuma behar du izan.

## Euskal Curriculumaren diseinua

Gure ustez eraiki beharreko Curriculuma honako ezaugarri hauetan oinarritu beharko litzateke:

- **Curriculum osoa eta burujabea izatea.** Lehen aipatu bezala, euskaldunok nahi (eta behar) dugun curriculuma definitu behar dugu, kanpoko baldintzapenik gabe.
- **Euskal Herri osorako egina eta Euskal Herri osorako baliagarria izatea.** Gero, tokian tokiko errealitatearen araberako egokitzapenak egingo dituzte ikastetxeek.
- **Ikastetxe guztientzako baliagarria izatea.** Eskola publikoetarako, ikastoletarako zein bestelako ikastetxeetarako baligarria izan behar du Euskal Herriko Curriculumak.
- **Herri partaidetzaz eraikitzea.** Liburuxka honetan azaldu bezala, curriculuma funtsezkoa da hezkuntza sistema propioaren eraikuntzan. Beraz, bere diseinuan hezkuntza komunitate osoak eta Herriak berak parte hartu behar dute.

Nori dagokio Euskal Curriculum bateratu hori eraikitzeko prozesua bideratzea? Euskal Herriak Bere Eskola herri ekimenari ez, behintzat. Euskal Herri osoa aintzat hartzen duten hezkuntza elkargoen zein nazio instituzioen papera litzateke hori. **Euskal Herriak Bere Eskolaren ekarpenak honako bi hauek dira: batetik, euskal curriculuma diseinatzeko beharra gizartearatzea; eta bestetik, curriculum horren aplikaziorako testuinguru egokia lortzea. Sakondu dezagun apur bat gehiago bigarren eginbehar honetan.**

# 6. EUSKAL CURRICULUMAREN APLIKAZIOA

Euskal curriculuma aplikatzeko orduan, gai honetan inplikaturik dauden faktoreak hartu behar ditugu kontutan. Hau da, espainiar eta frantziar curriculumen aldeko faktoreak eta eraiki beharreko euskal kurrikuluaren aldekoak zeintzuk diren ikusi behar dugu. Izan ere, **gure lana lehenengoak neutralizatzen saiatzea eta bigarrengoak sustatzea izango baita.** Jarraian azaltzen den eskeman curriculumaren aferan parte hartzen duten faktore horiek biltzen saiatu gara.




Ezkerreko zutabean egun Euskal Herrian ofizialki ezarrita dauden curriculumak daude: espainiarra Araba, Bizkaia, Gipuzkoa eta Nafarroa Garaian (EAEko eta Nafarroako Gobernuek espainiar curriculuma egokitzen dute); frantziarra Lapurdi, Baxenafarroa eta Zuberoan. Eskuineko zutabean Euskal Herriaren errealitatea abiapuntutzat duen (eta definitu beharreko) curriculuma dago, hezkuntza sistema propio baten alde gaudenon helburua, hain zuzen ere. Lehenengoa, legearen aginduz ezarritako curriculum ofiziala da; bere legitimitatea legeetan oinarritzen da. Bigarrena, hezkuntza sistema propio baten alde gaudenok eraiki nahi dugun curriculuma da; bere legitimitatea euskaldunon hezkuntza eskubideetan oinarritzen da. Bi polo horien artean aurkitzen dira euskal ikastetxeak. Hau da, alde batetik espainiar zein frantziar curriculumak aplikatzeko faktoreek eragiten dute, eta beste alde batetik euskal curriculumerantz urratsak emateko faktoreek. Ikus ditzagun hauek banan bana.

## Jazarpen legala

Zergatik aplikatzen da Donostiako ikastetxe batean espainiarraren egokitzapena den EAEko curriculuma? Eta zergatik aplikatzen da Baionako ikastetxe batean frantziar curriculuma? Lehenengo arrazoia nahiko argia da: espainiar eta frantziar curriculumak derrigorrez aplikatu behar dira, legeek hala agintzen dutelako. Geure herriari hezkuntza sistema propioa izateko eskubidea ukatzean, curriculuma propioa izateko eskubidea ere ukatzen zaio. Eta beraz, nahi edo ez, espainiar curriculuma aplikatu behar da Donostian eta frantziarra Baionan. Faktore honi jazarpen legala deituko diogu, euskaldunon borondatea ezertarako kontutan hartu gabe ematen den jazarpena, hain zuzen ere. Jazarpen horrek intentsitate ezberdina dauka tokian toki. Zein bitartekoren bidez ematen da jazarpen legal hori?

- <u>Administrazioa</u>. Administrazioak baditu bere bitartekoak ikastetxeetan egiten dena fiskalizatzeko: ikuskariek arau legalak betetzen diren aztertzen dute, eta zuzendariak legea betetzera beharturik daude. Administrazioak baditu bitartekoak bere kontrola zorrozteko edo biguntzeko, Nafarroaren kasuan ikusten ari garen bezala. Edozein kasutan ere, gaur egun nahiko margen handia dago lehen hezkuntzan eta derrigorrezko bigarren hezkuntzan euskal curriculuma lantzeko, administrazioak ezin baitu guztia kontrolatu.

- <u>Selektibitatea, Errebalida, Baxoa</u>. Froga hauek gainditzeko (eta gero eta gehiago, nota ona ateratzeko) prestatu behar dira ikasleak. Uneotan froga hauek espainiar eta frantziar curriculuma ematen direla ziurtatzeko berme nagusienak dira, eta Batxilergoaren edukiak goitik behera determinatzen dute.
- <u>Komunikabideak</u>. Lege espainiar eta frantziarren zaindariak bihurtu dira komunikabide asko. Ikastetxe baten inguruan izugarrizko muntai mediatikoa antolatzeko gai dira. Gaur egun, lagun askok beldur handiagoa daukate ikastetxea komunikabideetan markaturik azaltzeari, administrazioaren presioari baino.

## Ohitura. Erosotasuna

Baina jazarpen legala ez da espainiar eta frantziar kurrikuluen aplikazioa ahalbidetzen duen faktore edo eragile bakarra. Aurretik aipatu bezala, batxilergoan izan ezik beste arloetan nahiko tarte handia dago euskal curriculuma lantzeko. Korrontea, ordea, bi curriculum horien alde doa, eta beraz errazagoa, erosoagoa, ohikoa da horiek aplikatzea. Nork ez du entzun honelako adierazpenik?

- *"Curriculuma? Baina zer da hori? Curriculum bakarrak egon behar al du? Euskal curriculuma planteatzea ez da izango beste homogenizazio baterako tresna?"*
- *"Guk euskal curriculuma ematen dugu: esaterako, Euskal Herriko mapak erabiltzen ditugu klasean"*
- *"Guk euskal curriculuma eman nahi dugu, baina testuliburu hauetan grafiko eta irudi hobeagoak azaltzen dira..."*
- *"Guk beti bezala ematen ditugu klaseak, eta ez da orain arte egon inongo arazorik. Zertara dator orain bazterrak nahastea?"*
- *"Euskal curricuumaren afera hori politika egitea da"*

## Borondatezko atxikimendua

Badago, hirugarrenik, espainiar eta frantziar kurrikuluak aplikatzea ahalbidetzen duen hirugarrengo faktore bat: borondatezko atxikimendua. Herri honen gehiengoa hezkuntza sistema propio baten alde eta euskal kurrikuluaren alde badago ere, badaude espainiar curriculumaren defentsa irekia egiten duten lagunak, curriculum horien aldeko militanteak.

## Euskal curriculuma aplikatzeko faktorea: borondatea

Euskal curriculuma aplikatzearen aldeko faktore bakarra dago: borondatea. Eta ez da gutxi, borondatea, konbentzimendua, determinazioa, aldaketak lortzeko ezinbesteko baldintza baitira. Herri honi hezkuntza sistema propioa eta euskal kurrikulua izateko eskubidea dagokio. Herri honetako ikasle, irakasle, guraso eta herritar gehienak hezkuntza sistema propioaren eta euskal kurrikuluaren alde daude. Eskubidea eta nahia, horra hor euskal kurrikuluaren legitimazio iturri biak. Legitimitate bikoitz horretan oinarritzen da euskal kurrikulua eraiki eta aplikatzeko borondatea, gogoa. Borondate eta gogo horren eraginez urrats ugari eman dira azkeneko hamarkadetan ikastetxez ikastetxe, herriz herri. Eta urrats berriak emateko bermea ere bada.

# 7. NONDIK HASI GAITEZKE?

Ikus daitekenez, euskal curriculumaren afera oso mamitsua da; hain da mamitsua, ezen nondik nora har dezakegun jakin gabe gera gaitezkeen. Nondik hasi gaitezke? Horixe da jende askok izan baduen galdera. Azkeneko helburua Euskal Curriculum bateratu hori eraiki eta ikastetxez ikastetxe aplikatzea izanik, gaurdanik gauza bi egin dezakegu.

- Alde batetik, **curriculumaren garrantziaz jabetu eta gai hori gure agendan txertatzea.**
- Beste alde batetik, eta Euskal Curriculum bateratu hori egin bitartean, **urrats txikiak planteatzen hastea.**

Jarraian, 2.003. urteko urtarrilean Zarautzen burutu ziren Nazio Mintegietan[7] adostutako tarteko helburuak aipatuko ditugu. Gure ikastetxean urrats txiki horiek planteatzen hasi gaitezke gaurdanik.

## Testu liburuak

- Euskal Herrian eta Euskal Herrirako ekoiztuak izatea
- Euskal Herriaren herri izaera onartua izatea
- Euskal kultura islatzea
- Izaera herritarra eta aurrerakoia agertzea
- Ikuspegi hezkidetzailea agertzea

Aurreko baldintzak betetzen ez dituzten testu liburuak izatekotan, beste bitartekoetara jotzea: apunteak, bibliografia anitza...

## Mapak

| | EH-REN IZAERA ONARTZEN EZ DUTENAK | EH-REN IZAERA ONARTZEN DUTENAK |
|---|---|---|
| **EUSKAL HERRIKO MAPAK** | -EAEkoak<br>-Hego EH-koak<br>-Aquitaniakoak | -EH osokoak |
| **EUROPAKO MAPAK** | -Europan Euskal Herria nazio gisa ez da azaltzen | -Europan EH-a nazio bezala<br>Herrien Europako mapa |
| **MUNDUKO MAPAK** | Euskal Herria ez da nazio bezala azaltzen | EH-a nazio bezala<br>Herrien munduko mapa |

Bestalde, ikuspegi aurrerakoi batetik munduaren proportzioak modu errealagoak islatzen duten munduko mapak hautatu beharko genituzke. Izan ere, eskoletan gehien erabili ohi dena iparraldeko lurraldeak handitzen ditu hegoaldekoen kaltetan. Era honetan, Indiaren azalera Eskandinabiarena baino ia hiru aldiz handiagoa izanik, India tamaina Eskandinabiaren erdia izango balitz bezala irudikatzen da mapan. Era honetan, sinbolikoki ere hegoaldea iparraldearen menpeko dela adierazi nahi da. Badaude beste mapa batzuk (esaterako Peters-ena) proportzioak gordetzen saiatzen direnak.

---

[7] Zarautzeko Mintegiak Euskal Herriak Bere Eskolak antolatu zituen, “Urrats berriak emateko garaia” lelopean. 200 bat lagunek parte hartu zuten. Bertan, Euskal Herriak Bere Eskolaren Aldarrikapen Taula definitu zen:

1. Haur eskola euskalduna eta herritarra.
2. Eskolak euskaldundu behar du.
3. Euskal eskolak euskal curriculuma.
4. Lanbide eskola euskaraz.
5. Euskal Herriak euskal unibertsitatea.

## Ospakizun egunak

Ospakizun egunak, zerbait aseptikoa balira bezala aurkeztu ohi zaizkigu. Baina, jai egunek harreman zuzena dute herri baten kultura eta historiarekin, horregatik **ez ditugu onartzen kanpotik ezarritako egutegia** (hispanitatearen eguna, konstituzio espainiarraren eguna...). Egun horietan, beraz, jaia hartzeari uko egitea proposatzen dugu. Jai egun horien ordez jai egun propioak proposatu ditu duela gutxi Udalbiltzak:

- Martxoak 8, Emakumearen Nazioarteko Eguna.
- Ekainak 24, udako solstizioa.
- Abenduak 3, Nafarroako Eguna.

## Irakasgaiak

Nahiz eta gaur egun curriculuma itxita iristen den euskal ikastetxeetara, egoera hau praktikan gainditzeko neurriak erabili daitezke. Zentzu honetan garrantzizkoa da ikasgaia lantzerako orduan zein **komunitate kulturala den ardatza eta abiapuntua errespetatzea**. Esaterako, historia espainiarra derrigorrezkoa bada ere, ikasgai honen trataera kritikoa bultzatu daiteke eta baita gure herriaren historia ezagutarazteko tartea ere.

# 8. EUSKAL CURRICULUMA, GUZTION ARDURA

Lantxo honetan ikusi dugunez, euskal curriculumaren eztabaidak oinarrizko aferei eragiten die: kultura, herria, hezkuntza, balioak... Eta, horregatik, ez da soilik *aditu batzuen kontua*, guztion kontua baizik. Horixe da Euskal Herriak Bere Eskolak bete nahi duen papera, euskal curriculumaren eztabaida gizarteratzea, herriratzea. Euskal hezkuntza komunitateko kide guztiok badugu zer esanik. Lantxo hau gaia lantzen hasteko baliagarria izango delakoan gaude.

## GEHIGARRIA: EUSKAL CURRICULUMAREN INGURUKO INKESTA

**1** **Lantzen diren edukien, jarreren eta baloreen ezaugarri orokorrak.**

## Lurraldetasunari dagokionez

**a) Zein da lurralde-ardatza?**

Lurralde ardatza diogunean, edukiak antolatzeko orduan erreferentzi gisa hartzen den espazioaz ari gara. Normalean espazio bat baino gehiago hartzen diren kontutan. Kasu horretan garrantziaren arabera sailkatu dezakegu, zenbakien bidez.

-Euskal Herria.
-Hego Euskal Herria.
-Ipar Euskal Herria.
-Nafarroa Garaia.
-EAE.
-Espainia.
-Frantzia.
-Norberaren herria edo eskualdea.

**b) Zer da Euskal Herria?**
-EAE.
-Lapurdi, Zuberoa eta Baxenafarroa.
-EAE eta Nafarroako Foru Komunitatea.
-EAE, Nafarroako Foru Komunitatea eta Ipar Euskal Herria.
-Sei edo zazpi herrialdez osaturiko herria.

## Ikuspegi kulturalari dagokionez

**a) Ikastetxeko hezkuntza proiektuan euskal kultura garatzeko planteamendurik al dago?**

**b) Klasean zein klasez kanpo euskal kulturaren elementuak lantzen al dira? (jokoak, jaiak, kirolak, musika, dantza, artea, mitologia, auzolana....)**

### Generoari dagokionez

**a) Aipatzen diren pertsonetatik, zenbat dira emakumezkoak eta zenbat gizonezkoak?**

b) **Testuliburuetako edota bestelako materialetako irudietan zenbat emakumezko eta zenbat gizonezko azaltzen dira? Z**

c) **Irudi horietan zein iharduerei loturik azaltzen dira emakumeak eta zeini gizonezkoak?**

d) **Hezkidetzaren inguruko arreta al dago ikastetxeko hezkuntza-proiektuan zein irakasgaiak ematerakoan?**

## Kurrikuluaren ikuspegiari dagokionez

a) **Edukiak lantzerako orduan, hurbileko errealitatetik abiatzen al gara?**

b) **Hurbileko adibideak landu, txangoak burutu eta esperimentuak egiten al dira?**

c) **Kontzeptuetaz gain, balore eta jarrerak ere lantzen al dira?**

## Jarrera eta baloreei dagokionez

a) **Honako gai hauek lantzen al dira?**

- **Ingurugiroarekiko errespetua.**
- **Sexualitatea.**
- **Elikadura eta osasuna.**
- **Ezberdina denarekiko errespetua.**
- **Gutxien dutenekiko elkartasuna.**
- **Komunikabideen eta teknologi berrien eraginak.**
- **Globalizazioa.**
- **Euskara.**
- **Telebista.**

b) **Baloreen eta jarreren lanketari nahikoa denbora eskaintzen al zaio?**

## 2 Lantzen diren edukien ezaugarriak jakintza arloka

### Natur Zientziak, Biologia

a) **Euskal Herri osoa hartzen al da kontutan ekosistemak lantzerakoan?** (Bardeetatik Piriniotaraino, Arabar Errioxatik Lapurdiko kostalderaino)

b) **Euskal Herri osoko landaredia eta fauna jorratzen al da?**

c) **Euskal Herriko oreka ekologikoaren inguruko eztabaida lantzen da?** (Euro-hiria, AHT, energia eolikoa, babesguneak e.a.)

### Matematikak, Fisika eta Kimika

a) **Jartzen diren ariketetan, nongo izenak eta tokiak agertzen dira?**

b) **Planteatzen diren ariketak zerikusirik al dute Euskal Herriko errealitate fisiko zein sozialarekin?**

### Geografia, Geologia

a) **Euskal Herri osoko ibaiak eta mendiak hartzen dira kontutan?** (esaterako, zein da Euskal Herriko mendirik altuena?)

b) **Euskal Herri osoko mapa geologikoa lantzen al da?**

c) **Ikasketak amaitzerakoan Euskal Herri osoko herri eta eskualde nagusienak menperatzen al dituzte ikasleek?**

### Historia, Gizartea, Soziologia

a) **Nongo historia ikasten da?**

-EAEkoa.
-Nafarroa Garaikoa.
-Arabakoa.
-Gipuzkoakoa.
-Bizkaikoa.
-Ipar Euskal Herrikoa.
-Euskal Herrikoa.
-Espainiakoa.

-Frantziakoa.
-Atlantiar Pirineotakoa edota Akitaniakoa.
-Iberiar penintsulakoa.
-Europaren hego-mendebaldekoa.
-Europakoa.
-Mundukoa.

**b) Honako pasarte historiko hauek jorratzen al dira?**

- Euskal Herriaren jatorria
- Euskal Herria eta indoeuropear herriak.
- Erromanizazioa Euskal Herrian.
- Orreagako borrokaldiaren ingurukoak.
- Euskal Herriko Erdi Aroa.
- Nafar erreinuaren sorrera, ezaugarriak eta gainbehera.
- Sorginen fenomenoa eta horrekiko errepresioa.
- Matxinadak.
- Iraultza frantsesaren eragina Euskal Herrian.
- Sarako deportazioak.
- Karlistadak.
- Euskararen gainbehera eta honen arrazoiak.
- Hezkuntza sistema espainiar eta frantsesaren ezarpena Euskal Herrian.
- Abertzaletasunaren sorrera.
- Lizarrako estatutua.
- Espainiar gerra zibila Euskal Herrian.
- I. eta II. mundu gerrak Euskal Herrian.
- Frankismoaren ondorioak Euskal Herrian.
- 60. hamarkadako susperraldi sozial eta kulturala.
- Gaur egungo egoera

**c) Ze ikuspegiren arabera bereizten dira epealdi historikoak?**

**d) Herri xehearen egoera, kezkak eta iharduerak behar bezala jorratzen al dira? Edo historiaren gertakizun eta gizon handiei garrantzia ematen zaio?**

## Filosofia

**a) Zer nolako pentsamendua jorratzen da?**

-Euskal pentsamendua (osagaiak eta ezaugarriak: auzolana, mitologia, jaien kontzepzioa, harremanak, kosmobisioa e.a.; euskal pentsamendu modernoa: foralismoa, abertzaletasuna, euskal liberalismoa, 60. hamarkadako belaunaldi berria)
-Espainiar pentsamendua
-Frantziar pentsamendua

-Mendebaldeko pentsamendua (Pentsalari grekoak, Ilustrazioa, Marxismoa, Existentzialismoa, Liberalismoa e.a.)

-Pentsamendu unibertsala (Mendebaldekoetaz gain, Afrikan, Asian, Hego Amerikan edota Ozeanian sortutako pentsamenduak)

-Pentsatzeko gaitasuna lantzen da, autore eta korronte filosofikoei erreparatu gabe.

**b) Euskal Herrian dauden eztabaida eta aferak jorratzen al dira?**

## Soinketa

**a) Herri kirolak lantzen al dira?**

**b) Saio teorikoetan, euskal selekzioaz mintzatzen al da?**

**c) Euskal Herri osoko ikastetxeak biltzen dituzten txapelketetan parte hartzeko erreztasunak ematen dira?**

**d) Lehia gorria baino, parte hartzea eta laguntasuna bultzatzen saiatzen al da?**

## Musika

**a) Nahikoa denbora eskaintzen zaio musikaren ikaskuntzari ikastetxeko hezkuntza proiektuan?**

**b) Euskal instrumentuak jotzen ikasten da?**

**c) Euskal Herriko musika tradizionala, klasikoa eta modernoa jorratzen al da?**

## 4 Erabiltzen diren testuliburuak

**a) Testuliburuirik erabiltzen al da?**

-Ez.
-Bai, beti.
-Bai, gehienetan.
-Bai, askotan.
-Bai, batzuetan.
-Bai, baina gutxi.

**b) Non daude eginak erabiltzen diren testuliburuak?**

**c) Ze argitaletxekoak dira?**

**d) Ze hizkuntzetan daude? Jatorrizko bertsioa dira edota itzulpena?**

## 5 Erabiltzen diren mapak

**a) Herriko mapa erabiltzen da? Eskualdekoa edo herrialdekoa erabiltzen da?**

**b) Euskal Herrikoa erabiltzen da?**

- Ez; Nafarroa Garaikoa baino ez da erabiltzen.
- Ez; Atlantiar Piriniotakoa edo Akitania Eskualdekoa erabiltzen dira.
- Bai; hiru herrialdez osaturik azaltzen da: Araba, Bizkaia eta Gipuzkoa.
- Bai; hiru herrialdez osaturik azaltzen da: Lapurdi, Baxenafarroa eta Zuberoa.
- Bai; lau herrialdez osaturik azaltzen da: Araba, Bizkaia, Gipuzkoa eta Nafarroa.
- Bai; zazpi herrialdez osaturik azaltzen da.

**c) Espainiar eta Frantziar estatuenak erabiltzen dira?**

- Ez
- Bai, espainiar estatuarena.
- Bai, frantziar estatuarena.
- Bai, espainiar zein frantziar estatuena.

**Euskal Herria ezberdindurik azaltzen da?**

**d) Europako zein mapa erabiltzen da?**

- Europako estatu ofizialak azaltzen duena.
- Europako estatu ofizialak eta Euskal Herria azaltzen duena.
- Herrien eta etnien Europako mapa erabiltzen da.

**e) Munduko zein mapa erabiltzen da?**

- Mercator-en mapa
- Peters-en mapa
- Herri eta etniak azaltzen dituen mapa.

## 6 Jaiak eta ospakizunak

- **Ze egun ospatzen dira? Zergatik?**